# Aleman

**Alemana**[1][2] (*Deutsch*) indoeuropar hizkuntza bat da, germaniar hizkuntzen taldekoa. Alemania, Austria, Liechtenstein eta Suitzan hitz egiten da batez ere, eta mundu osoko 11. da, hiztunen kopuruari bagagozkio, 120 milioi hiztun baititu. Europar Batasuneko mintzatuena da, 100 milioi hiztunekin. Hizkuntza horren euskal izenak alamanen germaniar tribuan du jatorria.

| **Alemana** | |
|---|---|
| Deutsch | |
| Alemana munduan<br>Hizkuntza ofiziala<br>Oso mintzatua eta ulertua eta/edo hizkuntza nazionala<br>Eskualde mailan mintzatua | |
| **Datu orokorrak** | |
| **Lurralde eremua** | Alemania<br>Austria<br>Suitza<br>Luxenburgo<br>Liechtenstein<br>Belgika<br>Italia (Bolzano-Hego Tirol)<br>Frantzia (Alsazia eta Lorrena)<br>Danimarka (Hegoaldeko Jutlandia) |
| **Hiztunak** | 185 milioi, haietatik 105 milioik ama-hizkuntza gisan |
| **Rankinga** | 10 |
| **Ofizialtasuna** | Alemania, Austria, Liechtenstein, Suitza, Luxenburgo, Belgika, Europar Batasuna. Tokiko hizkuntza ofiziala: Bolzano-Bozen (Italia), Krahule (Polonia), Vatikano Hiria (Suitzar Goardiaren hizkuntza) |
| **Eskualdea** | Nagusiki Erdialdeko Europa |
| **UNESCO sailkapena** | 1 ziurra |
| **Araugilea** | Rat für deutsche Rechtschreibung |
| **Hizkuntza familia** | |
| hizkuntza nostratikoak<br>Hizkuntza euroasiarrak<br>Indoeuropar hizkuntzak<br>germaniar hizkuntzak<br>mendebaldeko germaniar hizkuntzak<br>goi alemaniar hizkuntzak | |
| **Informazio filologikoa** | |
| **Hizkuntza-tipologia** | SOV hizkuntza, V2 hizkuntza, nominatibo-akusatibo hizkuntza, |

## Eduki-taula



## Banaketa geografikoa

Alemana nagusiki Alemania (herrialde horretako biztanleriaren % 95ek baino gehiagok ama hizkuntza du), Austria (% 89) eta Suitzako (% 65) hizkuntza da. Luxenburgo eta Liechtenstein herrialdeetako hizkuntza ofiziala ere bada.

Alemanierazko hiztunen komunitateak dituzten beste europar herrialde batzuk honako hauek dira: Italiako iparraldean, Bolzano-Hego Tirolgo probintzia); Belgikako alemaniar hiztunak dituzten ekialdeko kantoiak; Frantzian, Alsazia eta Lorrenako lurralde historikoetako departamentuetako hainbat udalerri; eta, azkenik, Danimarkan, Hegoaldeko Jutlandian hainbat udalerri ere baitaude.

Bestalde, badira alemanierazko hiztunen komunitateak Txekiar Errepublika, Eslovakia, Hungaria, Polonia, Errumania, Serbia, Errusia, Kazakhstan eta Namibian ere.

## Aldaerak

- Aleman *standard*a: hizkuntza batua, modu arautu modernoan abiatuta 1876an.
- Dialektoak:
  - *Behe saxoiera*: Belgikako iparraldean, Hegoafrikan eta Herbehereetan.
  - *Goi alemana*: erdialdekoa (Belgikako ekialdean, Herbehereetako hego-ekialdean, Frantzian eta Luxenburgon) eta goienekoa (Alsazia, Austria eta Suitzan). Yiddish hizkuntza ere aleman garaiaren aldaera da.
  - *Amana* alemana: Iowan (AEB).
  - *Belgrano* alemana: Buenos Aires-en (Argentina).
  - *Namibiera beltz*aren alemana: Namibian.

- *Unser* alemana: Papua Ginea Berrian.
- *Pennsylvaniako alemana:* Estatu Batuak eta Kanadako Pennsylvania, Ohio, Indiana eta Ontario hitz egiten da.
- *Plaut* alemana: Kanada eta Amerikan orokorrean.
- *"Lagunen"* alemana: Txilen.

| | |
|---|---|
| | subjektua aditza objektua, hizkuntza azentuala, time–manner–place (en), hizkuntza fusionatzailea eta Azentu |
| **Denbora gramatikalak** | orainaldia, future tense (en), iragana eta perfect (en) |
| **Modu gramatikalak** | indikatibo, agintera eta subjuntibo |
| **Genero gramatikalak** | genero maskulino, genero femenino eta neutro |
| **Kasu gramatikalak** | nominatibo, genitibo, datibo eta akusatibo |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-1** | de |
| **ISO 639-2** | deu ger |
| **ISO 639-3** | deu |
| **Ethnologue** | deu (http://www.ethnologue.com/language/deu) |
| **Glottolog** | stan1295 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/stan1295) |
| **Wikipedia** | de (https://de.wikipedia.org) |

# Dialektoak

Alemana germaniar hizkuntzen familiako mendebaldeko adarra osatzen du, germaniar hizkuntzen familia bera indoeuropar hizkuntzen multzoaren barnean dagoelarik. Germaniar dialektoak usadioz bi talde nagusitan banatzen dira: goi-alemana eta behe-alemana.

Alemanaren dialektoen arteko ezberdintasunak bistakoak dira. Hala, bada, dialekto mugakideen artean baizik ezin dute elkar ulertu hiztunek, maiz. Dialekto batzuk ulertezinak zaizkie aleman estandarraz baizik mintzatzen ez diren hiztunei. Dena dela, alemanaren dialekto guztiek continuum bat eratzen dute.

| Behe-alemanezko hitza | Goi-alemanezko hitza | Euskarazko esanahia |
|---|---|---|
| **ik** | **ich** | ni, nik |
| **maken** | **machen** | egin |
| **Dorp** | **Dorf** | herrixka |
| **tussen** | **zwischen** | artean |
| **op** | **auf** | gain / gainean |
| **Korf** | **Korb** | saski |
| **dat** | **das** | hori |
| **Appel** | **Apfel** | sagar |

# Inguruko hizkuntzak

- Iparraldean, daniera eta frisiera.
- Ekialdean, poloniera, sorbiera, txekiera, eslovakiera eta hungariera.
- Mendebaldean, frantsesa eta nederlandera.
- Hegoaldean, italiera, esloveniera, friuliera, ladinoa eta erromantxera.

# Literatura

*Ikusi: Alemanezko literatura*.

# Gramatika

Gramatika aldetik, nahiko hizkuntza konplexua da:

- Hiru genero daude: maskulinoa, femeninoa eta neutroa. Ez dago hitzak sailkatzeko arau zehatzik. Adibidez, *der Sohn* (semea, maskulinoa), *die Frau* (emakumea, femeninoa) eta *das Mädchen* (neskatoa, neutroa).
- Izenen hasierako letrak beti letra larriz idazten dira, aurreko puntuko adibideetan bezala.
- Hizkuntza nahiko flexiboa da, bai artikuluek, bai adjektiboek eta bai izenek zenbakian, kasuan eta generoan komunztadura egiten dute.
- Preposizioek ondoren datorren hitzarekin kasu gramatikalean komunztadura egiten dute:
  - *Ich gehe zu dem Arzt / Ich gehe zum Arzt*: Medikuarengana noa.
  - *Ich mag ins Kino gehen*: Zinemara joatea gustatzen zait.

## Artikuluak

**Artikuluak**

| **Zehaztuak** (bestimmter Artikel) | Singularra (euskarazko *-a* artikulua) | Plurala (euskarazko *-ak* edo *-ek* artikuluak) | **Zehaztugabeak** (unbestimmter Artikel) | Singularra (euskarazko *bat* artikulua) |
|---|---|---|---|---|
| | der (maskulinoa) | die (maskulinoa) | | ein (maskulinoa) |
| | | | | |

| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| | die (femeninoa) | die (femeninoa) | | eine (femeninoa) |
| | das (neutroa) | die (neutroa) | | ein (neutroa) |

## Hitzen pluralak

Ez da arau finkorik jarraitzen hitzen plurala osatzeko: hortaz, alemana ikastean, hitz bakoitzaren plurala ikasi beste irtenbiderik ez dago. Adibidez:

- *Der Sohn* / *Die Söhne* (semea / semeak), *Die Schwester* / *Die Schwestern* (alaba / alabak) edo *Das Haus* / *Die Häuser* (etxea / etxeak).

## Deklinazioak

Euskaraz edo latinez bezala, alemanezko izenak, artikuluak, adjektiboak eta izenordeak deklinatzen dira. Lau kasu ditu: nominatiboa, akusatiboa, datiboa eta genitiboa.

**Deklinabidea**

| **Deklinazioa** | **Alemanaz** | **Euskaraz** |
|---|---|---|
| **Nominatiboa** (subjektua) | **Der Mann ist hier** | Gizona hemen dago |
| | **Die Frau ist hier** | Emakumea hemen dago |
| | **Das Kind ist hier** | Umea hemen dago |
| **Akusatiboa** (objektu zuzena) | **Ich treffe den Mann** | Gizona aurkitzen dut |
| | **Ich treffe die Frau** | Emakumea aurkitzen dut |
| | **Ich treffe das Kind** | Umea aurkitzen dut |
| **Datiboa** (nori, zehar objektua) | **Ich sage das dem Mann** | Gizonari hori esaten diot |
| | **Ich sage das der Frau** | Emakumeari hori esaten diot |
| | **Ich sage das dem Kind** | Umeari hori esaten diot |
| **Genitiboa** (noren) | **Der Hund des Mannes** | Gizonaren txakurra |
| | **Der Hund der Frau** | Emakumearen txakurra |
| | **Der Hund des Kindes** | Umearen txakurra |

## Izenordeak

- *ich* = ni, nik
- *du* = hi, hik (lagunartekoa)
- *Sie* = zu, zuk; zuek (begirunezkoak)
- *er* (maskulinoa) / *sie* (femeninoa) / *es* (neutroa) = bera, berak / hura, hark
- *wir* = gu, guk
- *ihr* = zuek (lagun artekoa)
- *sie* = haiek

## Aditza

**Sein** (izan / egon)

| **Orainaldia** | **Lehenaldia** | **Etorkizuna** |
|---|---|---|
| **Ich bin** (Ni naiz / nago) | **Ich war** (Ni nintzen / nengoen) | **Ich werde sein** (Ni izango naiz / egongo naiz) |
| **Du bist** (Hi haiz / hago) | **Du warst** (Hi hintzen / hengoen) | **Du wirst sein** (Hi izango haiz / egongo haiz) |
| **Er / Sie / Es ist** (Bera da / dago) | **Er / sie / es war** (Bera zen / zegoen) | **Er / sie / es wird sein** (Bera izango da / egongo da) |
| **Wir sind** (Gu gara / gaude) | **Wir waren** (Gu ginen / geunden) | **Wir werden sein** (Gu izango gara / egongo gara) |
| **Ihr seid** (Zuek zarete / zaudete) | **Ihr wart** (Zuek zineten / zeundeten) | **Ihr werdet sein** (Zuek izango zarete / egongo zarete) |

| | | |
|---|---|---|
| **Sie sind** (Haiek dira / daude) | **Sie waren** (Haiek ziren / zeuden) | **Sie werden sein** (Haiek izango dira / egongo dira) |

**Haben** (ukan, eduki)

| Orainaldia | Lehenaldia | Etorkizuna |
|---|---|---|
| **Ich habe** (Nik dut) | **Ich hatte** (Nik nuen) | **Ich werde haben** (Nik izango dut) |
| **Du hast** (Hik duk / dun) | **Du hattest** (Hik huen) | **Du wirst haben** (Hik izango duk / dun) |
| **Er / Sie / Es hat** (Berak du) | **Er / sie / es hatte** (Berak zuen) | **Er / sie / es wird haben** (Berak izango du) |
| **Wir haben** (Guk dugu) | **Wir hatten** (Guk genuen) | **Wir werden haben** (Guk izango dugu) |
| **Ihr habt** (Zuek duzue) | **Ihr hattet** (Zuek zenuten) | **Ihr werdet haben** (Zuek izango duzue) |
| **Sie haben** (Haiek dute) | **Sie hatten** (Haiek zuten) | **Sie werden sein** (Haiek izango dute) |

Aditz "ahulak" **te** – **ge-t**:

**Wählen** = aukeratu;

**Ich habe gewält** = Aukeratu dut;

**Du hast gewält** = Aukeratu duzu;

**Er** / **Sie** / **Es hat gewält** = Aukeratu du;

**Wir habe gewält** = Aukeratu dugu;

**Ihr habt gewält** = Aukeratu duzue;

**Sie haben gewält** = Aukeratu dute.

Esaldia: **Ich habe heute mein neues Auto gewält** = Nik nire kotxe berria gaur aukeratu dut.

Aditz "indartsuak":

**Verstehen** = ulertu;

**Ich habe verstanden** = Ulertu dut;

**Du hast verstanden** = Ulertu duzu;

**Er** / **Sie** / **Es hat verstanden** = Ulertu du;

**Wir habe verstanden** = Ulertu dugu;

**Ihr habt verstanden** = Ulertu duzue;

**Sie haben verstanden** = Ulertu dute.

Esaldia: **Ich habe diese Sprache nicht verstanden** = Ez nik hizkuntza hau ulertu dut.

## Oinarrizko esaldiak

- **Guten Tag** (formala) = Egun on.
- **Hallo** (informala) = Epa / Aupa / Kaixo.
- **Tschüss** (informala) = Agur.
- **Auf Wiedersehen** (formala) = Agur / Ikusi arte.
- **Wie geht's? / Wie geht es dir?** = Zer moduz?
- **Danke, gut** = Ongi, eskerrik asko.
- **Wie heißt du? / Wie heißen Sie?** = Zein da zure izena? / Nola duzu izena?
- **Ich heiße Jürgen** = Jürgen izena dut / Jürgen deitzen naiz.
- **Bitte** = Mesedez.
- **Bitte sehr!** = Ez horregatik!
- **Ja** = Bai.
- **Nein** = Ez.
- **Hilfe!** = Lagundu!
- **Sprichst du Baskisch?** = Euskaraz hitz egiten al duzu?
- **Gibt es hier jemanden, der Baskisch spricht?** = Ba al dago hemen inor euskaraz mintzatzen dena?
- **Ich komme aus Bilbao** = Ni Bilboko naiz.

- **Ich kann nicht** [**so gut**] **Deutsch sprechen** = Ez dut alemanez [hain ongi] hitz egiten.
- **Ich verstehe** (**das**) **nicht** = Ez dut ulertzen.
- **Ich weiß nicht** = Ez dakit.
- **Ich möchte... / Ich will...** = ...nahi dut.
- **Wo ist die Toilette?** = Non dago komuna?
- **Guten Morgen** = Egun on.
- **Guten Abend** = Arratsalde on.
- **Gute Nacht** = Gabon.

# Gramatikak eta hiztegiak

- Duden: *Die Grammatik*. Mannheim: Dudenverlag $^{8}$2009 (alemanez).
- Duden: *Die deutsche Rechtschreibung*. Mannheim: Dudenverlag $^{25}$2009 (alemanez).
- Rubio, E.M.: *Wörterbuch Hiztegia euskara alemana*. Donostia: Elkarlanean 2005.

# Ikasketak gaiari buruz

- George O. Curme, *A Grammar of the German Language*, New York 1922.
- Fausto Cercignani, *The Consonants of German: Synchrony and Diachrony*, Milan 1979, ISBN 88-205-0185-6.
- W. B. Lockwood, *German Today: The Advanced Learner's Guide*, Oxford 1987, ISBN 0-19-815850-5.
- Anthony Fox, *The Structure of German*, Oxford 2005, ISBN 0-19-927399-5.
- Wolfgang Krischke, *Was heißt hier Deutsch? – Kleine Geschichte der deutschen Sprache*, München 2009, ISBN 978-3-406-59243-0.
- Peter von Polenz, *Geschichte der deutschen Sprache*, Berlin 2009, ISBN 978-3-11-017507-3.
- Ruth H. Sanders. *German: Biography of a Language*, Oxford 2010.

# Erreferentziak


1. ↑ Euskaltzaindia. *38. araua: Munduko estatu-izenak, herritarren izenak, hizkuntza ofizialak eta hiriburuak.* (https://www.euskaltzaindia.eus/dok/arauak/Araua_0038.pdf).
2. ↑ *53. araua - Munduko estatuetako hizkuntza ofizialak.* (https://www.euskaltzaindia.eus/dok/arauak/Araua_0053.pdf) Euskaltzaindia . Noiz kontsultatua: 2011-09-04.


# Kanpo estekak

- Germanistik.org (Espainiako alemanezko webgunea) (http://www.uned.es/germanistik/catalogo/daf/daf-02primaria.htm)

| | |
|---|---|
| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q188 · Multimedia: German language (https://commons.wikimedia.org/wiki/Category:German_language)<br>**Identifikadoreak** · BNF: 119756721 (https://catalogue.bnf.fr/ark:/12148/cb119756721) (data) (http://data.bnf.fr/ark:/12148/cb119756721) · GND: 4113292-0 (https://d-nb.info/gnd/4113292-0) · LCCN: sh85054365 (https://id.loc.gov/authorities/sh85054365) · NDL: 00561611 (https://id.ndl.go.jp/auth/ndlna/00561611) · NARA: 10640847 (https://catalog.archives.gov/id/10640847) · SUDOC: 027789829 (https://www.idref.fr/027789829) · AAT: 300388344 (https://www.getty.edu/vow/AATFullDisplay?find=&logic=AND&note=&subjectid=300388344) · **Hiztegiak eta entziklopediak** · HDS: 011194 (https://hls-dhs-dss.ch/de/articles/011194) · Britannica: url (https://www.britannica.com/topic/German-language) |


Hizkuntza honek bere Wikipedia du: Bisita ezazu.

**Europar Batasuneko hizkuntza ofizialak**

Alemana · Bulgariera · Daniera · Errumaniera · Eslovakiera · Esloveniera · Estoniera · Finlandiera · Frantsesa · Gaelera · Gaztelania · Greziera · Hungariera · Ingelesa · Italiera · Letoniera · Lituaniera · Maltera · Nederlandera · Poloniera · Portugesa · Suediera · Txekiera

**Germaniar hizkuntza modernoak**

| | |
|---|---|
| **Iparraldekoak** | Daniera • Faroera • Norvegiera (bokmåla, nynorska) • Islandiera • Suediera |
| **Mendebaldekoak** | Afrikaansa • Alemana (austrobavariera, coloniero alemana, franciquera, luxenburgera, fersentalera, Pennsylvaniako alemana, suitzar alemana, zinbriera) • Behe-alemana (mendebaldekoa, nederlandar behe-saxoiera) • Brabantera • Flandriera • Frisiera (iparraldekoa, ekialdekoa, mendebaldekoa) • Ingelesa • Limburgera • Nederlandera • Walserera • Ripuariera • Eskoziera (Ulsterko eskoziera) • Yiddisha • Zeelandera |

Parentesi artean: parentesiaren ezkerrean dagoen hizkuntzaren dialektoak.

